# PAZKOALDIKO HILETETAN

**Sarrera-agurra**

Senideok: agur bero bat **I.ren** hileta eleizkizunera etorri zareen guztioi. Ondo etorri.

Senide bat galtzeak emoten dauan atsekabean Jainkoagandiko mezu itxaropentsua hartzen dogu argi eta zoli: heriotzea ez da azkena; bizitza betean sartzea da heriotzea.

Horixe da Jesus Jaunaren biztuerea ospatzen dogunon baieztapena. Eta hori ospatzea eta horren barri emotea izango da Pazko aldi guztian egingo doguna.

Abestuz agertu daigun, ba, pazko poza eta itxaropena.

**Abestia**

**R/**. **Bizi da Jauna, bizi da!** Bizi da Jauna, bizi da!
Bizi da, bizi da, bizi da Jauna, bizi da gure artean! (bir)

Pazko goizean hutsik dago hilobia.
Biztu da Kristo, biztu, gure eguzkia:
nagusi da argia! R/.

Ilunpetatik berak gu atara gaitu;
munduaren distira berak dau barritu:
berak gaitu biztu. R/.

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.
—Amen.

† Hilen artetik lehenengo biztua dan Jauna izan bedi

zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Pazko Zuzia isiotzean**

Pazko pozak itxaropenez beteten gaitu: Jainkoaren dohaia dan biziak harengan dau betea, betiraunean. Horixe dinosku Jesus berbiztuak. Horixe iragarten dogu Pazko Zuzia isiotzeaz, abesti artean.

**R/. Biztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia.**

Jainkoak dau-ta gaur Kristo biztu: Aleluia!
Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia, Aleluia. **R/.**
Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!
Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. **R/.**

**OTOITZA**

Zeu autortzen zaitugu, Jainko ona,
bizitzearen sortzaile eta betetzaile.
Hildako gure senide **I.** (*izena*)
bizitzearen betetasunean ikus daigula
eskatzen deutsugu; eta guk
bizitzearen dohaia eskertzen jakin daigula,
alkarri ongiesana eta maitasuna erakutsiz.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta, gizaldi eta gizaldietan.

**ApEg** (Eg 4, 1-12)

«*Nik egiten dodazan ezaugarriak, eta handiagoak ere, egingo dozuez nire jarraitzaileok*» agindu eutsen Jesusek ikasleei. Eta horren barri emongo deuskue honeek irakurgai honetan. Entzun!

*Ez dogu beste inor salbatu gaikezanik.*

**Apostoluen Eginak liburutik**

Egun hareetan, Pedrok eta Joanek, elbarria osatu ondoren, herriari berba egiten ziharduela, abadeak eta tenpluko guardiaburua eta saduzearrak etorri jakezan. Oso hasarre egozan, herriari irakasten eutsoelako eta Jesusengan hilen biztuera jazotakoa zala iragartzen ebelako. Atxilotu eta kartzelan sartu ebezan biharamona arte, ilunabarra zan-eta. Baina hitzaldia entzun ebenetako askok sinistu eban, eta gizonezko fededunak bosten bat mila izatera heldu ziran.

Biharamonean, herriko agintari, zahar eta lege-maisuak Jerusalemen batu ziran; han ziran Anas abade nagusia, Kaifas, Joan, Alexandro eta abadeburuen familietako guztiak. Pedro eta Joan euren aurrera ekarriazo eta itaundu eutsien: «Zein aginpidez edo noren izenean egin dozue hori?»

Orduan, Pedrok, Espiritu Santuaz beterik, esan eban: «Herriko agintari eta zaharrok, gaur, gaixo bati eginiko mesedea dala-eta, noren eskuz osatu dan itauntzen deuskuzue; bego, beraz, argi zuentzat guztiontzat eta Israel herri osoarentzat, zuek kurutzeratu eta Jainkoak hilen artetik biztu eban Jesu Kristo Nazaretarraren izenean dozuela gizon hau zeuen aurrean osaturik. Jesus hauxe da zuek, "etxegileok, baztertutako harria, giltzarri bihurtua". Honengan bakarrik dogu salbazinoa, ez deusku-eta Jainkoak gizon-emakumeoi beste inor emon eguzkipean, gu salbatu gaikezanik».

Jaunak esana

## Erantzun salmoa

Sal 118 [117], 1-2 eta 4. 22-24. 25-27a (R/. ik. 22)

**R/. Etxegileek baztertutako harria,**
**berori bihurtu da giltzarria.**

(edo): **Bedeinkatua Jauna gure Jainkoa**

Eskerrak Jaunari, ona da-eta,
haren maitasuna betikoa da-eta.
Esan begie israeldarrek:
haren maitasuna betikoa.
Esan begie Jaunari begirune deutsoenek:
haren maitasuna betikoa. R/.

Etxegileek baztertutako harria
giltzarri bihurtu da.
Jaunak egin dau hori, gure begien harrigarri.
Hau da Jaunaren egintza-eguna,
poztu gaitezan eta alaitu harengan. R/.

Emon, Jauna, salbazinoa,
emon, Jauna, zoriona!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena!
Jaunaren etxetik bedeinkatzen zaituegu.
Jainko da Jauna, berak egiten deusku argi. R/.

**Ebanjelioa** (Mt 28, 8-15)

Biztuerea gauza barria da. Ez dago berbarik ha iragarteko edo aditzera emoteko. Haren aurrean, edo sinistu edo ukatu egin daiteke.

Egin deiogun harrerea hori agertuko deuskun Ebanjelioari, Aleluia abestuz, zutunik.

**Aleluia**

Aleluia, aleluia, aleluia, aleluia.

Jesus Jauna, agertu egiguzuz liburu santuak;
sutu gure bihotzak, hitz egiten deuskuzunean.

*Esan nire senideei Galileara joateko;*
*han ikusiko nabe.*

**✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik**

Aldi haretan, emakumeak hilobitik arin-arin alde egin eta, ikaraz baina poz-pozik, lasterka joan ziran ikasleei barri emotera.

Horretan, Jesusek urten eutsen bidera eta agur egin eutsen. Emakumeek, hurreraturik, oinak besarkatu eutsoezan eta gurtu egin eben. Orduan, Jesusek esan eutsen: «Ez bildur izan! Zoaze eta esan nire senideei Galileara joateko. Han ikusiko nabe».

Emakumeak bidean joiazala, guardiako batzuk urira joan eta gertatutako guztiaren barri emon eutsien abadeburuei. Honeek, zaharrakaz batu eta berbatu ondoren, dirutza handia emon eutsien gudariei, hauxe aginduz: «Esaizue, haren ikasleek gauez etorri eta zuek lo zengozela, gorpua lapurtu dabela. Eta Gobernariaren belarrietara ezer heltzen bada, geuk berba egingo deutsagu eta arriskutik atarako zaituegu».

Hareek dirua hartu eta agindutako moduan egin eben. Eta gaur arte zabaldu da kontu hori judeguen artean.

Jaunak esana

**HOMILIA**

Senideok: **I.** (*izena eta abizenak*) zanari agur

egiteko alkartu gaitu Jainkoak, bere Seme Jesu Kristoren opari-mahai inguruan. Ez daigun alperrik galdu emoten jakun aukera hau; aprobetxatu daigun; onuragarri bihurtu daigun.

Asko eta ez ondo egiten da berba heriotzaren inguruan.

Batzuentzat hileteak ez dauka ezelango baliorik; azaluskeria da: bizitzan zehar erakutsi behar da erakutsi beharrekoa, eta ez heriotzan negar handiak egin edo lorak eroan hildakoari.

Hemen gagozanok ez dogu uste izango alperrik gagozala hemen; edo gurea azaluskeria edo itxurakeria hutsa dala. Zeozerk erakarri gaitu **I.ren** gogoramenean alkartu eta Jainkoak esan leigunari zabalik egotera.

Begira zer aurkitu geiken iragarri jakun Jainkoaren berban: sinismena itxurakeria lez bizi izan daitekela, edo zintzotasunean, izaeran haregaz bat eginda. Eta ondorioak bestelakoak dira.

Lehenengo irakurgaian, Apostoluen testigantzari abade-buruek zelan erantzun eutsoen ikusi dogu; honeik zeren bildur ziran eta ze erabagi hartzera heldu ziran: Jesus Nazaretarraren biztuerea iragarten ebenak paretik kentzea, hareik hiltea erabagi dabe.

Ebanjelioak emakumeak jarri deuskuz biztuerearen testigantza emoten. Eta abade-buruak urduri jarten dira, eta guzurretara joten dabe diru pilak eralgiz.

Senideok: Apostoluen eta ebanjelioko emakumeen testigantzeak, merezi dauala Jesusengan sinisteak iragarten deusku. Baina, merezi dauala, zintzotasunez bizi izatekotan. Eta abade-buruen jarrereak, alderantziz, beste hauxe: itxurakeriaz bizi izan ezkero, guzurrezko siniskera horrek azpikeriara eta zintzoaren heriotza bilatzera ere eroan daikela.

Aukerea daukagu, ba, senideok, Jainkoaren berbea onartzeko eta hausnartzeko, eta zintzotasunean erantzuteko Jainkoak egiten deuskun deiari: bere Semea onartuz, harengan uste osoa jarriz, betiko bizitza amesteko.

Sinismen honek Jainkoaz daukagun irudia eta ustea aldatu eragingo deusku; harenganako konfiantzaz bizi izatera eroango, eta gure ingurua eta ingurukoak begi errukitsuez eta maitalez begiratzera.

Ez da, ba, alperreko holango inguruetan alkartzea eta Jainkoak esan leigunari zabalik egotea. Ondorio oparoak atara geikez, Apostoluengan eta ebanjelioko emakumeengan ikusi dogunez.

Jesusek bere apostolu, biztuerearen testigu, egin gura gaitu; hori iragarteko adoretzen gaitu; eta ezeren bildur barik biziazoten.

Eskertu deiogun guzti hori Eukaristia honetan, ahalik eta gartsuen esku hartuz.

**ESKARIETAN**

Uste osoz egin deiogun otoitz Aita errukitsuari, bere Semea hilen artetik biztu dauan Jainkoari:

Eskatu daigun hilaren alde
Kristo bitarteko hartuz;
Gure otoitzak asko dagike
Harenarekin alkartuz.

**HARTU ZUK, JAUNA, HIL HAU ZERUAN**
**BETIKO BIZI-LEKUAN.**

Kristorena zan, Aitak deitua
harekin bizi t'hiltzera:
Aitak eroan daiala orain
Kristorekin berbiztera.

Lehen joanak ere izan begiz
gure otoitzak gogoan;
guztiak batu daizala Jaunak
bere maitezko altzoan.

**HARTU ZUK, JAUNA, DANAK ZERUAN...**
**BETIKO BIZI-LEKUAN.**

† Zeuk salbatzen dozuz, Jauna, gizaki guztiak, eta zure gogoa inor ez galtzea dan ezkero, entzun, arren, zure herriaren eskariak. Jesukristo.

## Oparien gainekoa

Bete dozu, Jainko ona, zeure zoriontasunean
**I**.ri egin deutsazun bizitzearen dohaia;
haren gomutaz egiten deutsugun opari honen bidez
aurkitu daigula alkarrenganako begiramena
eta senide behartsuen alde jarduteko grina. Jesu Kristo.

**Prefazioa**

Jauna zuekin Eta zure espirituarekin.
Gora bihotzak Jaunagan daukaguz.
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari. Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
Bera da munduaren salbamena,
gizon-emakume guztien bizia
eta hilen biztuerea.

Honen bitartez,
zure handitasuna autortzen dau aingeruen taldeak,
beti pozez alkarturik zure aurrean.

Onartu egizu, Jauna,
euren gorespenekin bat egin daiguzala geuk ere
gure kantu-hotsak.

SANTU, SANTU, SANTUA…

## II. EUKARISTI OTOITZA

Santu zara, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

Berak, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/. Hau da sinismenaren misterioa.**

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.
Izan gogoan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,
Joseba gure Gotzainarekin,
**(I.** Gotzain Laguntzailearekin,)
eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.
Era berean, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozun
**I.** zure zerbitzaria;
zure Semearekin bat egin dan hau
biztueran ere berarekin bat izan dadila.

Baita izan gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Apostolu santuekin
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,
ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,

OSPE ETA AINTZA GUZTIA
GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.
Amen.

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

R/. Zeurea dozu erregetza;
zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

R/. Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
R/. Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

**Gurekin egon**, gurekin, Jauna, behar dogu-ta hitz egin:
heldu da gaua, ilun-iluna. Gurekin egon, gurekin!

Zertaz diharduzue hitz egiten
bide guztian bihotz ilun?
Hara, Jerusalemen gertatuaz:
Jesus hil dala, harainegun.

Kristok behar zituen jasan behar
horreik guztiok jasan behar.
Biztu ta halan eiten ospean sar
betiereko ospean sar.

**Jauna, ez nekien** Zu nor zinen, ez nor zinen, ez bazinenik;
ni baina zure bila nenbilen, ez neban inon atsedenik.

Nire gauak oihu egin eutsun, dana ilun, dana oztopo;
Zuk argiz besarkatu ninduzun, Zurekin egin neban topo.

Orain badakit nor zaren, Jauna, nor zaren eta neu nor naizen; nire bihotzak behar ebana ai!, zure maitasuna baitzen.

**Jaunartze ondoren**

Sakramentuotan esku hartu dogunok, Jauna,
zeuganako uste onez bete gaituzu
eta hildako gure senide **I.** zeure zorionean dala
somatzea emon deuskuzu.
Arren eskatzen deutsugu
zugandiko poz honen zabaltzaile izan gaitezala.
Jesu Kristo.

---

## ERRESPONSOAN

Hildako gure senideari azken agurra emotean, bateatua izan dala gogoratzen dogu uraz zipriztinduz; hantxe iragarri zan Jainkoaren semea/alabea zala Jesukristorengan. Orain honen berbiztean esku hartzen dauala iragarriko dogu, itxaropenez, abesti artean.

**Kantua**

Heriotzeak desegiten dau bizi-lekua munduan.
Baina zuk, Jauna, hartzen gaituzu zeure etxean, zeruan.

Joan jakuna onartu, Jauna, zeu bizi zaran lekuan.

Gure arteko gertakizunek ezbehar asko dakarte;
alkar maitatzen dogunok ezin bizi geintekez aparte.
Jainkoa lagun, esan dagigun: «Agur, Egun handirarte!»

**OTOITZA**

Betiko bizitzearen argitasunaz
gure negar-malkoak txukatzen dozuzan
Jainko Aita, bizitzearen Egilea:
entzun gure otoitz gartsua
eta hildako gure senide **I.**
zeure altzoan dala jakiteak
biztu daiala gugan sinismen argitasuna
eta egunero zu otseintzeko (zerbitzeko) gogoa.
Jainko eta errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan. Amen.

---

**Azken oharra**

Gure atsekabean, eta beste edozein unetan ere, Jainkoak ez gaitu bertan-behera izten. Eroan daigun bere berbearen argitasuna eta bere maitasunaren gozoa. Eta izan daigun uste on: Aita dalako hartu dau, betiraun osorako bere altzoan, senide izan dogun **I**.

† Jauna zuekin.
R/. Eta zure espirituarekin.
† Bedeinka zaizela Jainko errukitsuak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
R/. Amen.

**Azken kantua**

Zeru-lurren Erregina: Aleluia, aleluia.
Biztu jaku Jesus Jauna: Aleluia.
Zuregandik sortu dana: Aleluia!
Hilobitik zutitu da: Aleluia!

† Zoaze Jaunaren bakean (Aleluia!, aleluia!)
R/. Eskerrak Jainkoari (Aleluia!, aleluia!)

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguztidun betiko ho-rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren

bi-tar-tez. Be-ra da munduaren sal-ba-me-na, gizon–emakume

guztien bi-zi-a e-ta hi-len biz-tu-e-ra.

Honen bitar-tez, zure handitasuna autortzen dau aingeruen tal-de-ak,

beti po-zez alkarturik zure au-rre-an. Onartu egi-zu, Jau-na, euren gores-

penekin bat egin daiguzala geuk e-re geu-re kan-tu –ho-tsak: